# Garizumako V. astea

Aukerako Meza

Irakurgai honeek aste honetako edozein egunetan erabili daitekez, batez ere **B** eta **C** urteetan, hau da, Lazaroren ebanjelioa Garizumako V. domekan irakurri ez danean.

## I. IRAKURGAIA

*Haren gorputza berotzen hasi zan, umearen gainean etzun zanean.*

Erregeak bigarren liburutik

*2 Erg* 4, 18b-21. 32-37

Behin baten, Eliseo etxean hartu eban Xumengo emakumearen semea bere aitagana joan zan, hau igitariekin ebilen tokira. Umeak esan eutson aitari: «Hau buruko mina!» Aitak agindu eutson morroi bati: «Eroan egizu amagana». Morroiak hartu eta amari eroan eutson mutikoa. Amak altzoan euki eban eguerdira arte, baina umea hil egin zan. Amak gora eroan eta Jainkoaren gizonaren ohean etzun eban; gero, atea itxi eta joan egin zan.

Heldu zan Eliseo etxera, eta umea hilda aurkitu eban bere ohe gainean.

Gelara sartu, atea itxi eta otoitz egin eutson Jaunari. Gero, ohera igon eta umearen gainean etzun zan, ahoa umearen aho gainean, begiak begien gainean eta eskuak eskuen gainean. Holan egon zan umearen gainean etzunda, eta umearen gorputza berotzen hasi zan. Eliseo jagi eta harantz-honantz ibili zan etxean zehar. Ondoren, barriro ohera igon eta umearen gainean etzun zan. Umeak eztul egin eban zazpi bider eta begiak edegi ebazan.

Eliseok bere morroi Gehaziri deitu eta esan eutson: «Dei egiozu gure xunemdarrari». Deitu eta etorri zanean, Eliseok esan eutson: «Hartu zeure semea». Emakumea hurreratu eta Eliseoren oinetan lurreraino ahuspeztu zan; gero, umea hartu eta urten egin eban.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 17 [16], 1. 6-7. 8 eta 15 (R/. 15b)

R/. **Esnatzean zure presentziaz naz asetuko, Jauna.**

V/. Entzun, Jauna, nire justizi eskea,
entzun nire deadarra;
makurtu belarria nire otoitzera,
ez dot engainurik ezpanetan. R/.

V/. Deika nozu, Jainko, erantzuten deustazu-eta;
bihurtu nigana belarria, entzun nire ahotsa.
Agertu egizu zeure maitasun harrigarria,
erasotzaileengandik salbatzen dozuz-eta
zure esku ahaltsuan babesten diranak. R/.

V/. Zaindu nagizu begi-ninia lez,
gorde ni zeure hegoen kerizpean.
Nik, barriz, zuzena nazala,
zure aurpegia dot ikusiko,
esnatzean zure presentziaz naz asetuko. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

*Jn* 11, 25a. 26

V/. Neu naz biztuera eta bizia, dino Jaunak;
Nigan sinisten dauana ez da betiko

hilko.

## EBANJELIOA

*Neu naz biztuera eta bizia.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik

*Jn* 11, 1-45

Aldi haretan, Lazaro izeneko gizon bat gaixorik egoan. Betaniakoa zan, Maria eta beronen ahizta Martaren herrikoa. (Maria hau –makalik egoan Lazaroren arreba– Jesus usaingarriz igurtzi eta oinak bere uleakaz sikatu eutsozana zan). Lazaroren arreba biek albiste hau bialdu eutsoen Jesusi: «Jauna, zuk maite dozuna gaixorik dago». Jesusek, hori entzutean, esan eban: «Gaixotasun hau ez da heriotzarako, Jainkoaren aintza azaltzeko baino, gaixotasun honen bidez Jainkoaren Semearen aintza azaldu dadin».

Jesusek maite zituan Marta, beronen ahizta eta Lazaro. Hau gaixorik egoala jakinda be, egoan lekuan gelditu zan Jesus beste egun bian. Ostean, esan eutsen ikasleei: «Goazen barriz be Judeara».

Ikasleek esan eutsoen: «Maisu, oraintsu judeguek harrika egin gura izan eutsuen, eta hara joan behar dozula barriro?» Jesusek erantzun eutsen: «Ez ete ditu egunak hamabi ordu? Egunez dabilenak ez dau estropezu egiten, ze, eguzkiak argitzen deutso bidea; gauez dabilenak, ostera, estropezu egiten dau, ez dauka argirik-eta». Eta jarraitu eban: «Lazaro gure adiskidea loak hartu dau; baina banoa itzartzera».

Ikasleek esan eutsoen: «Jauna, lo badago, osatuko da». (Jesusek Lazaroren heriotzaz esan eban hori; baina ikasleek loak hartze hutsaz ziharduala uste eben).

Orduan, Jesusek garbi esan eutsen: «Lazaro hil egin da eta pozten naz ni han ez izateaz, ze, zuen onerako izango da, holan sinistu dagizuen. Goazen, bada, haren etxera». Tomasek, Bikotxa eritxonak, esan eutsen ikaskideei: «Goazen geu be, beragaz hil gaitezan».

Jesus heldu zanean, Lazarok baeroiazan jadanik lau egun hilobian. Betania hur dago Jerusalemdik, hiru kilometro ingurura. Eta judegu asko

etorri zan Marta eta Mariagana, nebeagaitik doluminak emotera.

Martak, Jesus etorrela entzun ebaneko, bidera urten eutson; Maria, barriz, etxean gelditu zan. Martak esan eutson Jesusi: «Jauna, hemen izan bazina, gure nebea ez zan hilko. Halan be, badakit eskatuko deutsazun guztia emongo deutsula Jainkoak».

Jesusek erantzun eutson: «Biztuko da zure nebea». Eta Martak: «Badakit biztuko dana azken egunean, hildakoen biztueran».

Jesusek esan eutson orduan: «Neu naz biztuera eta bizia; Nigan sinisten dauana, hilda be, biziko da, eta bizi dana, Nigan sinisten badau, ez da betiko hilko. Sinisten dozu hori?» Martak erantzun eutson: «Bai, Jauna, sinisten dot Zu Mesias zarala, Jainkoaren Semea, mundura etortzekoa zana».

Ondoren, bere ahizta Mariari deitzera joan zan Marta, eta esan eutson belarrira: «Maisua hemen da eta dei egiten deutsu». Hori entzutean, behingoan jagi eta Jesusengana joan zan. Jesus oraindino herrian sartu barik

egoan, Martak aurkitu eban leku berean.

Etxean Mariari doluminak emoten egozan judeguek, harek bat-batean jagi eta urten ebala ikustean, jarraitu egin eutsoen, negar egitera hilobira joialakoan. Mariak, Jesus egoan lekura heltzean, ikusi ebanerako, oinetara ahuspez jausi eta esan eutson: «Jauna, hemen izan bazina, gure nebea ez zan hilko».

Maria eta Mariagaz etorritako judeguak negarrez ikusirik, barruak dar-dar egin eutson Jesusi eta, guztiz bihozminduta, itaundu eban: «Non ipini dozue?» Erantzun eutsoen: «Jauna, zatoz eta ikusi». Jesusek negarrari emon eutson.

Han egozan judeguek esan eben: «Begira zelako maitasuna eutson!» Baina hareetariko batzuek esan eben: «Itsuari begiak zabaldu eutsozan honek, ez ete eikean hau hiltzea galarazo?»

Jesus, ostera be bihozminduta, hilobira hurreratu zan. Hatx-zuloa zan, harri-losaz estaldua. Jesusek esan eban: «Kendu harri-losa!»

Hildakoaren arreba Martak esan eutson: «Jauna, hatsa botako dau, lau egun badaroaz-eta». Jesusek erantzun eutson: «Ez deutsut esan, ba, sinisten badozu Jainkoaren aintza ikusiko dozula?»

Kendu eben, bada, harria. Jesusek, begiak zerurantz jasorik, esan eban: «Aita, eskerrak Zuri, entzun deustazulako. Nik badakit beti entzuten deustazuna; baina inguruan dodan jenteagaitik dinot, Zeuk bialdu nozula sinistu dagien».

Hau esanda, oihu egin eban indartsu: «Lazaro, erdu kanpora!» Eta hildakoak urten egin eban. Esku-oinak oihal-zerrendaz lotuta eta aurpegia zapiz estalduta zituan. Jesusek esan eutsen: «Askatu egizue eta itzi joaten».

Maria ikustera joandako judegu askok, Jesusek Lazarorekin egina ikustean, beragan sinistu eban.

Jaunak esana.

## Garizumako V. astelehena

I. irakurgai hau era laburrean ik. honen ondoren.

### I. Irakurgaia

*Errubako izanik be, hil beharra dot.*

Danielen Profezia liburutik

*Dn* 13, 1-9. 15-17. 19-30. 33-62

Egun hareetan, Joakim izeneko gizon bat bizi zan Babilonian. Elkiasen alaba Susanagaz ezkonduta egoan. Oso emakume ederra zan Susana eta Jainkoari begirune eutsona; haren gurasoak israeldar zintzoak ziran eta Moisesen legean hazi eben alabea. Joakim oso aberatsa zan eta baratze bat eukan etxe ondoan. Eta, danetan agurgarriena zanez, haren etxean batzen ziran judeguak.

Urte haretan, herriko zahar bi ezarri ebezan epaile; ondo baino hobeto etorkien hareei Jaunak dinoana: «Herri-gidari izan behar leukien epaile zaharrengandik sortu da gaiztakeria Babilonian». Epaile hareek sarri izaten ziran Joakimen etxean, eta auziren bat ebenek hareengana jotzen eben.

Eguerdi aldean, jenteak alde egiten ebanean, Susana bere senarraren baratzera joaten zan ibiltzera. Epaile zahar biek egunero ikusten eben baratzean ibiltzera joaten zanean, eta harenganako gogo bizi gaiztoa sortu

jaken. Burua galdu eben eta Jainkoaz eta haren lege zuzenez ahaztu egin ziran.

Hareek une aproposaren zain egozala, han etorri zan Susana, ohiturea eukan lez, neskame bi beste lagunik ez ebala, eta baratzean bainatzeko gogoa etorri jakon, bero egiten eban-eta. Ez egoan han inor, gordeta zelatan egozan zahar biak besterik. Susanak neskameei esan eutsen: «Ekarri gantzuki eta usaingarriak eta itxi baratzeko ateak, bainua hartu dagidan».

Neskameek urten ebenean, urten eben zahar biek gordelekutik, Susanagana arin-arin joan eta esan eutsoen: «Entzun, baratzeko ateak itxita dagoz eta ez gaitu inork ikusten. Zuganako gogo biziz gagoz; emoizu amore eta etzun zaitez gugaz. Bestela, salatu egingo zaitugu; zugaz mutil gazte bat egoala esango dogu eta horregaitik bialdu dozuzala neskameak».

Susana aieneka hasi zan: «Ez dot urtenbiderik! Zuek esana egiten badot, heriotza-zigorra dot; egiten ez badot, barriz, zuen eskutik ezin ihes egin.

Nahiago dot, halan be, ezetz esan eta zuen eskuetan jausi, Jaunaren aurrean pekatu egin baino». Eta oihuka hasi zan Susana. Oihu egin eben zahar biek be, eta bietako bat baratzeko atea edegitera joan zan arineketan. Etxeko morroiak, baratzeko oihuak entzutean, aldameneko atetik arrapaladan sartu ziran, zer jazotzen ete zan ikustera. Zaharrek euren istorioa kontatu ebenean, morroiak guztiz lotsaturik gelditu ziran, ez zan-eta egundo Susanaz holakorik entzun.

Biharamonean, herria Joakimen, Susanaren senarraren, etxera etorri zanean, han ziran zahar biak be: Susanaren aurka asmo txarrez beterik etorzan, ha hilazoteko prest. Herriaren aurrean esan eben: «Ekarri Susana, Elkiasen alaba, Joakimen emaztea». Joan ziran haren bila, eta Susana, bere guraso, seme-alaba eta senide guztiekin etorri zan. Etxekoak eta ikusten eben guztiak negarrez egozan.

Zahar biek, herriaren erdian zutunik, eskuak Susanaren buru gainean ezarri ebezan. Harek, negarrez, zerura jaso ebazan begiak, haren bihotzak

Jaunagan eban-eta konfiantza. Zaharrek esan eben: «Baratzean biok bakarrik genbilzala, sartu zan hau neskame bigaz, itxi ebazan ateak eta neskameak bialdu egin ebazan. Orduan, gorderik egoan mutil gazte bat etorri eta honegaz etzun zan. Gu baratzeko txoko baten gengozan eta, txarkeria ha ikustean, arineketan joan ginan hareengana. Besarkaturik ikusi genduzan, baina mutila ezin izan genduan harrapatu, gu baino azkarragoa zalako, eta atea edegi eta joan egin zan. Hau, bai, harrapatu genduan eta mutila nor zan itaundu geuntsan; baina ez euskun esan gura izan. Geu gara horren testigu».

Zahar hareei, herriko arduradun eta epaile ziranez, sinistu egin eutsen batzarrak, eta Susana heriotzara kondenatu eben. Orduan, Susanak oihu handiz esan eban: «Betiko Jainko, ezkutukoak ikusten eta gauza guztiak jazo baino lehen ezagutzen dozuzana! Zuk ondo dakizu guzurrezko autormena egin dabela nire aurka; baina horreek euren gaiztakeriaz nire aurka asmatu daben horretan errubako izanik be, hil

egin behar dot».

Entzun eban Jaunak Susanaren otoitza eta, hiltzera eroiela, Daniel izeneko gaztetxu baten gogo santua argitu eban Jainkoak. Eta oihu handiz esan eutsen: «Ez dot nik erantzukizunik honen heriotzan». Herri guztiak, harengana bihurturik, esan eutson: «Zer diharduzu esaten?» Danielek, jentearen erdian zutunik, esan eban: «Israeldarrok, hain zentzunbakoak zarie ala? Auzia aztertu barik eta froga barik kondenatu dozue israeldar emakume hau. Bihurtu auzitegira, guzurrezko autormena egin dabe-eta horreek emakume honen aurka».

Behingoan bihurtu zan jente guztia eta herri-arduradunek esan eutsoen Danieli: «Jesarri zaitez gure erdian eta egin berba, Jainkoak zaharrei dagokien zentzuna emon deutsu-eta». Orduan, Danielek esan eutsen: «Bereiztu egizuez bata besteagandik, eta neuk itaunduko deutset». Bereiztuta jarri ebezanean, bati deitu eta esan eutson: «Gaiztakerian zahartu zaran hori! Orain datorkizuz gainera gaur arte egin dozuzan pekatuak; epai zuzenbakoak

emon dozuz, errubakoak kondenatuz eta errudunak askatuz, Jaunak esanaren kontra; honan dino-eta: "Ez emon heriotzara errubakoa eta zintzoa". Ea bada, emakume hau mutilagaz ikusi dozun ezkero, esan zein zuhaitzen azpian ikusi dozuzan alkarregaz».

«Akazia baten azpian», erantzun eban harek. Danielek, orduan: «Ederto! Guzur horregaz zeure burua galdu dozu. Jainkoaren aingeruak hartu dau zigor-agindua eta erdibitu egingo zaitu».

Ha bialdu ondoren, bestea ekarriazo eta esan eutson: «Kanaango arrazakoa zara zu, ez Judakoa. Edertasunak liluratu zaitu eta gogo biziak bihotza okertu deutsu. Holan jokatzen zenduen Israelgo emakumeakaz, eta hareek, bildurrez, zuekin etzuten ziran; baina oraingoan Judako emakume batek ez dau jasan zuen txarkeria. Ea bada, esaidazu zein zuhaitzen azpian aurkitu dozuzan alkarturik». «Haritz baten azpian», erantzun eutson. Danielek orduan: «Ederto! Guzur horregaz zeure burua galdu dozu zeuk be. Jainkoaren

aingerua zain dago ezpatagaz, zu erdi bi egiteko. Biok garbituko zaitue».

Orduan batzar osoa oihuka hasi zan eta Jainkoa bedeinkatu eben, beragan itxaroten dabenak salbatzen ditualako. Ondoren, zahar bien kontra, euren autormenaz frogatu eban-eta Danielek guzurrezko testigantza egin ebela, eta lagun hurkoari egitea pentsaturik eben txarra egin eutsien euren buruei: Moisesen legearen arabera, hil egin ebezan. Egun haretan pertsona errubako bat salbatu zan.

Jaunak esana.

---

I. irakurgaia era laburrean.

*Errubako izanik be, hil beharra dot.*

Danielen Profezia liburutik

*Dn* 13, 41c-62

Egun hareetan, jente-taldeak heriotzara kondenatu eban Susana. Orduan, Susanak oihu handiz esan eban: «Betiko Jainko, ezkutukoak ikusten eta gauza guztiak jazo baino lehen ezagutzen dozuzana! Zuk ondo dakizu guzurrezko autormena egin dabela nire aurka; baina horreek euren

gaiztakeriaz nire aurka asmatu daben horretan errubako izanik be, hil egin behar dot».

Entzun eban Jaunak Susanaren otoitza eta, hiltzera eroiela, Daniel izeneko gaztetxu baten gogo santua argitu eban Jainkoak. Eta oihu handiz esan eutsen: «Ez dot nik erantzukizunik honen heriotzan». Herri guztiak, harengana bihurturik, esan eutson: «Zer diharduzu esaten?» Danielek, jentearen erdian zutunik, esan eban: «Israeldarrok, hain zentzubakoak zarie ala? Auzia aztertu barik eta froga barik kondenatu dozue israeldar emakume hau. Bihurtu auzitegira, guzurrezko autormena egin dabe-eta horreek emakume honen aurka».

Behingoan bihurtu zan jente guztia eta herri-arduradunek esan eutsoen Danieli: «Jesarri zaitez gure erdian eta egin berba, Jainkoak zaharrei dagokien zentzuna emon deutsu-eta». Orduan, Danielek esan eutsen: «Bereiztu egizuez bata besteagandik, eta neuk itaunduko deutset». Bereiztuta jarri ebezanean, bati deitu eta esan eutson: «Gaiztakerian zahartu zaran hori! Orain

datorkizuz gainera gaur arte egin dozuzan pekatuak; epai zuzenbakoak emon dozuz, errubakoak kondenatuz eta errudunak askatuz, Jaunak esanaren kontra; honan dino-eta: "Ez emon heriotzara errubakoa eta zintzoa". Ea bada, emakume hau mutilagaz ikusi dozun ezkero, esan zein zuhaitzen azpian ikusi dozuzan alkarregaz».

«Akazia baten azpian», erantzun eban harek. Danielek, orduan: «Ederto! Guzur horregaz zeure burua galdu dozu. Jainkoaren aingeruak hartu dau zigor-agindua eta erdibitu egingo zaitu».

Ha bialdu ondoren, bestea ekarriazko eta esan eutson: «Kanaango arrazakoa zara zu, ez Judakoa. Edertasunak liluratu zaitu eta gogo biziak bihotza okertu deutsu. Holan jokatzen zenduen Israelgo emakumeakaz, eta hareek, bildurrez, zuekin etzuten ziran; baina oraingoan Judako emakume batek ez dau jasan zuen txarkeria. Ea bada, esaidazu zein zuhaitzen azpian aurkitu dozuzan alkarturik». «Haritz baten azpian», erantzun eutson. Danielek

orduan: «Ederto! Guzur horregaz zeure burua galdu dozu zeuk be. Jainkoaren aingerua zain dago ezpatagaz, zu erdi bi egiteko. Biok garbituko zaitue».

Orduan batzar osoa oihuka hasi zan eta Jainkoa bedeinkatu eben, beragan itxaroten dabenak salbatzen ditualako. Ondoren, zahar bien kontra jaso ziran, euren autormenaz frogatu eban-eta Danielek guzurrezko testigantza egin ebela, eta lagun hurkoari egitea pentsaturik eben txarra egin eutsien euren buruei: Moisesen legearen arabera, hil egin ebezan. Egun haretan pertsona errubako bat salbatu zan.

Jaunak esana.

---

## Erantzun salmoa

*Sal* 23 [22], 1-3. 4. 5. 6 (R/. 4a)

R/. **Ibar baltz ilunean banabil be,**
**ez naz gatxaren bildur,**
**Zu neugaz zagoz-eta.**

V/. Jauna dot artzain, ez naz ezeren beharrean;
larre gurietan etzunazoten nau,
ur-bazter nasaira eroaten

eta indarrak deustaz barritzen;
bide segurutik naroa,
bere izenari ohore eginez. R/.

V/. Ibar baltz ilunean banabil be,
ez naz gatxaren bildur,
Zu nigaz zagoz-eta;
zure artzain-makilak nasaitzen nau. R/.

V/. Mahaia atontzen deustazu
arerioen begi-bistan;
orioz igurzten deustazu burua,
gainezka dot edontzia. R/.

V/. Zoriona eta maitasuna ditut lagun,
bizitzako egun guztietan,
eta Jaunaren etxean biziko naz
amaibako egunetan. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

*Ez* 33, 11

V/. Nik ez dot atsegin gaiztoaren heriotza, dino Jaunak,
jokabidez aldatu eta bizi dadila baino.

## EBANJELIOA

*Zuetan pekatu barik dagoanak*
*bota deiola lehenengo harria.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen

liburutik

*Jn* 8, 1-11

Aldi haretan, Jesus Oliamendira joan zan. Biharamon-egunsentian, ostera, tenplura agertu zan barriro, eta herri guztia etorri jakon; Jesus jesarri eta irakasten hasi jaken.

Lege-maisuek eta fariseuek adulterioan harrapatutako emakume bat ekarri eutsoen eta, erdian ipiniz, esan eutsoen Jesusi: «Maisu, hau emakumeau adulterioan ziharduala harrapatu dabe. Moisesek horrelakoak harrika hiltzeko agindu euskun legean. Zuk zer dinozu?» Azpikeriaz esaten eutsoen hori, zertan salatu izateko.

Jesus, ostera, makurtu eta atzamarrez lurrean idazten hasi zan. Baina hareek itaundu eta itaundu ebilkozanez, zutundu eta esan eutsen: «Zuen artean pekaturik barik dagoanak bota deiola lehenengo harria». Eta, barriro makurturik, lurrean idazten jarraitu eban. Hareek, hori entzutean, banan-banan alde egiten hasi ziran, zaharrenetatik hasita. Jesus bakarrik gelditu zan, emakumea aurrean ebala.

Jesusek, zutunduta, esan eutson: «Emakume, non dira salatzaileak? Ez zaitu inork kondenatu?» Harek erantzun: «Inork be ez, Jauna». Orduan Jesusek: «Ezta Neuk be, ez zaitut kondenatzen. Zoaz eta ez egin barriro pekaturik».

Jaunak esan

---

Edo **C** urtean, Ebanjelio hori aurreko domekan irakurria izan danean:

## EBANJELIOA

*Neu naz munduaren argia.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik

*Jn* 8, 12-20

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen fariseuei: «Neu naz munduaren argia; Niri jarraitzen deustana ez da ilunpean ibiliko; izango dau bizia emoten dauan argia».

Fariseuek esan eutsoen: «Zuk zeure buruaren alde egiten dozu autormen; beraz, zure autormenak ez dau balio».

Jesusek erantzun eutsen: «Nik autormen neure buruaren alde egiten

badot be, nire autormenak balio dau, ze, ondo dakit Nik nondik etorria nazan eta nora noan; baina zuek ez dakizue, ez nondik natorren, ez nora noan. Zuek giza erara epaitzen dozue; Nik ez dot inor epaitzen. Eta epaituko baneu be, nire epaia baliozkoa izango litzateke, ze, ez dot Neuk bakarrik epaitzen, bialdu nauan Aitak eta biok baino. Eta zeuen legean dago idatzita, lagun biren autormena baliozkoa dala. Halandaze, Nik neure buruaren alde egiten dot autormen; baina bialdu nauan Aitak be egiten dau autormen nire alde».

Hareek itaundu eutsoen: «Non da zure Aita?» Jesusek erantzun eutsen: «Ez Ni, ez nire Aita, ez gaituzue ezagutzen. Ni ezagutuko banindduzue, neure Aita be ezagutuko zeunkie».

Tenpluan irakasten ziharduala, dirutegi ondoan, egin zituan Jesusek adierazpen honeek. Halan be, ez eutson inork gainean eskurik jarri, ze, ez zan oraindino etorria haren ordua.

Jaunak esana.

---

## Garizumako V. martitzena

## I. IRAKURGAIA

*Sugeek haginka egindako guztiak,*
brontzezko sugeari begiratzean, osatu egingo dira.

Zenbakiak liburutik

*Zen* 21, 4-9

Egun hareetan, Hor menditik Itsaso Gorrirako bidea hartu eben israeldarrek, Edomgo lurraldea inguratzeko asmoz. Baina herria, bideaz gogaituta, txarto esaka hasi zan Jainkoaren eta Moisesen aurka: «Zertako atara ginduzuzan Egiptotik? Basamortuan hiltzeko? Ez dogu ogirik, ez urik, eta asperturik gagoz mana dalako janari kaskar honegaz».

Jaunak suge pozoitsuak bialdu eutsozan herriari, eta hareen haginkadaz israeldar asko hil zan. Orduan, Moisesengana joan eta esan eutsoen: «Pekatu egin dogu, Jaunaren eta zure kontra txarto esaka jardunez. Erregutu Jaunari sugeak gugandik urruntzeko».

Erregutu eban Moisesek herriaren alde, eta Jaunak esan eutson: «Egizu

brontzezko sugea eta ipini haga baten muturrean. Sugeek haginka egindako guztiak, brontzezko sugeari begiratzean, osatu egingo dira». Egin eban Moisesek brontzezko sugea eta hagaren muturrean ipini eban. Eta sugeren batek norbaiti haginka egiten eutsonean, brontzezkoari begiratzean osatu egiten zan.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 102 [101], 2-3. 16-18. 19-21 (R/. 2)

R/. **Entzun, Jauna, nire otoitza,**
**heldu bedi Zugana nire deadarra.**

V/. Entzun, Jauna, nire otoitza,
heldu bedi Zugana nire deadarra.
Ez ezkutatu niri aurpegia larrialdian,
makurtu nigana belarria nik dei egitean;
erantzun bizkor. R/.

V/. Begirune izango deutsoe nazinoek Jaunaren izenari,
lurreko errege guztiek haren aintzari,
Jaunak Sion barriro eraikitzean

eta bera aintzaz betea agertzean.
Bihurtuko da zapalduaren otoitzera,
ez dau gitxietsiko honen eskaria. R/.

V/. Bego hau idatzirik hurrengo gizaldiarentzat,
eta sortzeko dagoan herriak goratuko dau Jauna.
Jaunak bere santutegi garaitik begiratu egin dau,
zerutik lurrera begiratu,
katiguen aieneak entzuteko
eta heriotzara kondenatuak askatzeko. R/.

Ebanjelio aurreko txatala

V/. Hazia Jainkoaren hitza da;
ereilea, barriz, Kristo;
honi entzuten deutsonak betiko bizia izango dau.

**EBANJELIOA**

*Gizonaren Semea jasoko dozuenean,*
*orduan jakingo dozue Neu nazala.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik

*Jn* 8, 21-30

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen fariseuei: «Ni banoa, eta nire bila ibiliko zarie; baina zeuen pekatuan hilko zarie. Ni noan lekura zuek ezin zarie joan». Orduan, entzuleek esan eben: «Bere burua hil behar ete dau? Horregaitik esan ete dau “Ni noan lekura zuek ezin zarie joan”?»

Jesusek jarraitu eban: «Zuek behekoak zarie, Ni goikoa naz; zuek mundu honetakoak zarie, Ni ez naz mundu honetakoa. Horregaitik esan deutsuet, zeuen pekatuetan hilko zariela; izan be, “Ni nazala” sinisten ez badozue, zeuen pekatuetan hilko zarie-eta». Orduan, esan eutsoen: «Nor zara Zu?»

Jesusek erantzun: «Hasieratik nabiltzue esaten. Badot zuetaz zer esanik eta zer epaiturik nahiko. Baina bialdu nauana fidagarria da; eta Nik hari entzun deutsadana, horixe bera dinotsat munduari». Hareek ez ziran konturatu Aitaz egiten eutsela berba.

Jesusek, beraz, esan eutsen: «Gizonaren Semea jasoko dozuenean, orduan jakingo dozue nazana nazala Ni, eta ez dodala neurez ezer egiten;

ezpada ze, Aitak irakatsi deustana bakarrik dinodala. Ni bialdu nauana Neugaz dago; ez nau bakarrik itzi, ze, harek atsegin dauana egiten dot beti».

Jesusek gauza honeek esan zituanean, askok sinistu eban harengan.

Jaunak esana.

## Garizumako V. eguaztena

### I. Irakurgaia

*Jainkoak bere aingerua bialdu dau bere zerbitzariak libratzera.*

Danielen Profezia liburutik

*Dn 3, 14-20. 91-92. 95*

Egun hareetan, Nabukodonosor erregeak esan eban: «Xadrak, Mexak eta Abed-Nego, egia da ez dozuezala nire jainkoak zerbitzen eta nik eraiki dodan urrezko irudia gurtzen? Prest zagoze orain, turuta, txirula, zitara, harpa, salterio eta beste musika-tresnen doinua entzun orduko, ahuspeztu eta nik eraikitako irudia gurtzeko? Gurtu nahi ez badozue, su biziko labara botako zaituet behingoan. Eta orduan, zein jainkok libratuko zaitue nire eskuetatik?»

Xadrak, Mexak eta Abed-Nego honeek Nabukodonosor erregeari esan eutsoen: «Ez dogu gai honetan zertan erantzunik. Zerbitzen dogun gure Jainkoak su biziko labatik eta zure eskuetatik libratu ahal baginduz, errege jauna, libratuko gaitu. Eta halan ez balitz be, jakizu, errege jauna, ez doguzala zerbiduko zure jainkoak, ezta gurtuko be zuk eraiki dozun urrezko irudia».

Orduan, Nabukodonosor hasarre gorrian jarri zan, aurpegia be aldatuta, Xadraken, Mexaken eta Abed-Negoren aurka, eta labea bestetan baino zazpi bider gehiago berotzeko agindu eban. Eta bere gudaririk indartsuenei agindu eutsen Xadrak, Mexak eta Abed-Nego lotzeko eta su biziko labara botatzeko.

Nabukodonosor erregea zutitu zan salto batez eta, harriturik, aholkulariei esan eutsen: «Ez ziran hiru, lotu eta sutara botatako gizonak ala?» Hareek erantzun: «Halan da, errege jauna». Eta erregeak: «Bada, nik lau ikusten ditut, suaren erdian aske dabiltzala; ez deutse suak kalterik egin, eta laugarrenak aingerua dirudi».

Nabukodonosorrek oihu egin eban: «Bedeinkatua Xadraken, Mexaken eta Abed-Negoren Jainkoa! Bere aingerua bialdu dau beragan uste osoa eben zerbitzariak libratzera; nahiago izan dabe-eta erregearen agindua hausi eta euren bizia arriskuan jarri, eurena ez daben jainko bat zerbidu eta gurtu baino».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Dn* 3, 52. 53. 54. 55. 56 (R/. 52b)

V/. Bedeinkatua Zu, Jauna, gure asaben Jainkoa:

R/. **Aintza eta gorespen Zuri gizaldietan.**

V/. Bedeinkatua zure izen santua eta ospetsua: R/.

V/. Bedeinkatua Zu zeure tenplu santu eta ospetsuan: R/.

V/. Bedeinkatua Zu, errege-tronuan jesarrita zagozana: R/

V/. Bedeinkatua Zu, kerubinen gainean jesarririk,
lezak arakatzen dozuzana: R/.

V/. Bedeinkatua Zu zeru-sabaian: R/.

Ebanjelio aurreko txatala

Ik. *Lk* 8, 15

V/. Zorionekoak Jainkoaren hitza
bihotz onez eta zabalez entzunik,
barruan gorde eta iraupenez frutua emoten dabenak.

## EBANJELIOA

*Semeak askatzen bazaitue,*
*benetan aske izango zarie.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik

*Jn* 8, 31-42

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen beragan sinistu eben judeguei: «Nire hitzean irauten badozue, egiaz zarie nire ikasle; ezagutuko dozue egia, eta egiak aske egingo zaitue».

Erantzun eutsoen: «Gu Abrahamen ondorengoak gara, eta ez gara inoiz inoren esklabo izan. Zelan dinozu aske izango garala?»

Jesusek erantzun eutsen: «Benebenetan dinotsuet: Pekatu egiten dauana pekatuaren esklabo da.

Esklaboa ez da etxean betiko geratzen; semea, bai, betiko geratzen da. Beraz, Semeak askatzen bazaitue, benetan aske izango zarie. Badakit, bai, Abrahamen ondorengoak zariena; baina Ni hil guran zabiltze, ze, nire berbea ez da zuengan sustraitzen. Neure Aitaren ondoan ikusi dodanaz egiten dot berba Nik; zuek, barriz, zeuen aitagandik entzun dozuena egiten dozue».

Hareek erantzun eutsoen: «Abraham dogu aita». Jesusek orduan: «Abrahamen seme bazinie, Abrahamek egin ebana egingo zeunkie. Zuek, ostera, Ni hil nahian zabiltze, eta Jainkoari entzundako egia besterik ez deutsuet esan. Abrahamek ez eban holakorik egin. Zuek zeuen aitak egiten dauana egiten dozue».

Erantzun eutsoen: «Gu ez gara sasikume; aita bakarra dogu, Jainkoa». Jesusek orduan: «Zuen aita Jainkoa balitz, maiteko nindukezue, Ni Jainkoagandik urten eta etorri naz-eta; Ni ez naz neu neutara etorria, harek bialdua baino».

Jaunak esana.

# Garizumako V. eguena

## I. IRAKURGAIA

*Herri askoren aita izango zara.*

Hasiera liburutik

*Has* 17, 3-9

Egun hareetan, Abram ahuspez jausi zan, eta Jainkoak esan eutson: «Hona zugaz egingo dodan ituna: herri askoren aita izango zara. Aurrerantzean ez dozu Abram izango izena, Abraham baino, herri askoren aita egiten zaitut-eta; oparo ugarituko zaitut, nazinoen sorburu egingo eta erregeak urtengo dabe zugandik.

Belaunez belaun eutsiko deutsat zugaz eta zure ondorengoakaz egingo dodan itunari; betiko ituna izango da; zure eta zure ondorengoen Jainkoa izango naz. Zeuri eta zeure ondorengoei emongo deutsuet betiko jaubegotzat Kanaango lurraldea, gaur etorkin lez bizi zaran lurraldea; zure ondorengoen Jainkoa izango naz».

Jainkoak esan eutson gainera Abrahami: «Gorde nigazko ituna zuk eta zure ondorengoek belaunez belaun».

Jaunak esana.

Erantzun salmoa

*Sal* 105 [104], 4-5. 6-7. 8-9 (R/. 8a)

R/. **Gogoan dau eten barik Jaunak bere ituna.**

V/. Jo egizue indartzen dauan Jaunagana,
bilatu eten barik haren aurpegia.
Ekarri gogora harek egindako mirariak,
haren egintza harrigarriak eta agindu zuzenak. R/.

V/. Zuek, Jaunaren morroi Abrahamen jatorrikook,
Jakoben seme-alabok, haren aukeratuok,
Jauna da gure Jainkoa,
lur osoaren gain haren aginpidea. R/.

V/. Gogoan dau eten barik bere ituna,
mila gizalditarako agindua;
Abrahamegaz eginiko ituna,
Isaaki egindako zina. R/.

Ebanjelio aurreko txatala

Ik. *Sal* 95 [94], 8a. 7d

V/. Gaur, ez gogortu bihotza;
entzun Jaunaren ahotsa.

## EBANJELIOA

*Zuen aita Abraham pozik zan*
*nire eguna ikusiko eban itxaropenez.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik

*Jn* 8, 51-59

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen judeguei: «Bene-benetan dinotsuet: Nire hitza gordetzen dauanak ez dau inoiz heriotzarik ikusiko». Judeguek esan eutsoen: «Oraintxe bai ezagutzen dogula deabruaren menpe zagozana. Abraham hil egin zan eta profetak be bai; eta Zuk dinozu: "Nire berbea gordetzen dauanak ez dau inoiz heriotzarik ikusiko"? Gure aita Abraham baino handiagoa ete zara, bada, Zu? Ha hil egin zan eta profetak be bai; nor zaralakoan zagoz?»

Jesusek erantzun eutsen: «Nire burua Neuk ohoratuko baneu, nire ohore horrek ez leuke ezer be balioko; baina Aitak, zeuen Jainkoa ei dozuenak, ohoratzen nau Ni; zuek, ostera, ez dozue ezagutzen; Nik, bai, ezagutzen

dot, eta ezagutzen ez dodala esango baneu, guzurtia izango nintzateke zeuen moduan; baina ezagutzen dot bera eta gorde be bai haren hitza. Zuen aita Abraham pozik zan nire eguna ikusiko eban itxaropenez; ikusi eban eta alaitasunez bete zan».

Orduan, judeguek esan eutsoen: «Ez dituzu oraindik berrogeita hamar urte, eta Abraham ikusi dozula?» Jesusek erantzun eutsen: «Bene-benetan dinotsuet: Abraham sortu baino lehenagokoa naz Ni».

Orduan, harriak hartu ebezan hari jaurtitzeko; baina Jesus ezkutatu egin zan eta tenplutik urten.

Jaunak esana.

## Garizumako V. barikua

### I. Irakurgaia

*Neugaz dot Jauna, gudari indartsu.*

Jeremias Profetaren liburutik

*Jr* 20, 10-13

Hauxe esan eban Jeremiasek:

«Jentearen amenazuak entzuten ditut,
bildur-ikara edonon:

"Salatu, salatu dagigun".
Adiskideak eurak be begira ditut, nik noiz huts egingo:
"Ea engainatzen dogun, dinoe;
orduan menperatuko dogu eta mendekua hartuko".

Baina neugaz dot Jauna, gudari indartsu;
jausiko dira nire arerioak, ezin izango nabe garaitu;
hareen asmoek porrot egingo dabe,
hareen lotsa sekulakoa izango da, ahaztuezina betiko.
Jaun ahalguztiduna, zuzen aztertzen dozuna,
gizakiaren buru-bihotzak ikusten dozuzana,
zure esku itzi dot neure auzia:
ikusiko ahal dot zure mendekua arerioen lepo!

Kanta Jaunari, goratu egizue Jauna,
harek askatu dau-eta gaiztoen eskutik behartsuaren bizia».

Jaunak esana.

Erantzun salmoa

*Sal* 18 [17], 2-3b. 3c-4. 5-6. 7 (R/. ik. 7)

R/. **Neure larrialdian dei egin neutsan Jaunari,**
**eta entzun eban nire oihua.**

V/. Maite zaitut, Jauna, neure indar!
Jauna da nire hatx, nire gaztelu,
bera nire askatzaile. R/.

V/. Ene Jainko, ene hatx babesgarri,
ene babeski eta salbazino-indar,
ene gordeleku goresgarri.
Dei egin neutsan Jaunari,
eta salbatu ninduan arerioakandik. R/.

V/. Herio-olatuek inguratu ninduen,
uholde gaiztoek ikaratu;
Herio-lezako lokarriek ninduen lotu,
Herio-sareek harrapatu. R/.

V/. Neure larrialdian dei egin neutsan Jaunari,
deadar neure Jainkoari;
eta entzun eban bere tenplutik nire oihua,
haren belarrietara heldu zan nire deadarra. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

Ik. *Jn* 6, 63c. 68c

V/. Zure hitzak, Jauna, espiritu eta bizi dira;
zure hitzek betiko bizia dabe.

## EBANJELIOA

*Atxilotu egin nahi izan eben,*
*baina ihes egin eutsen eskuetatik.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik

*Jn* 10, 31-42

Aldi haretan, judeguek barriro harriak hartu ebezan Jesusi harrika egiteko. Jesusek esan eutsen: «Egintza on asko egin dot zuen aurrean Aitaren izenean; horreetariko zeinegaitik egin gura deustazue harrika?»

Erantzun eutsoen: «Ez zaitugu egintza onak egiteagaitik harrikatu nahi, birao egiteagaitik baino; gizon izanik, zeure burua Jainko egiten dozulako».

Jesusek erantzun eutsen: «Ez ete dago idatzita zuen Liburu Santuan: "Neuk esan dot: jainko zarie?" Beraz, Jainkoak "jainko" deitzen deutse bere

berbea zuzendu eutsenei, eta Liburu Santuak esana ukatu ezina da. Zelan dinozue, bada, Nik, Aitak santutu eta mundura bialdu nauan honek, birao egiten dodala, Jainkoaren Seme nazala esateagaitik? Neure Aitaren egintzak egiten ez badodaz, ez sinistu Niri; baina egin egiten badodaz, Neuri sinisten ez badeustazue be, sinistu egintzei. Holan, behin betiko jakingo dozue Aita Nigan dagoala eta Ni Aitagan».

Barriz be preso hartu gura izan eben, baina ihes egin eutsen eskuetatik. Jordanez beste aldera joan zan barriro Jesus, sasoi baten Joan bateatzen ibili izan zan lekura.

Han gelditu zan aldi batez, eta jente asko joaten jakon. Hauxe inoen: «Joanek ez eban mirarizko seinalerik bapere egin, baina harek honetaz esan eban guztia egia zan». Eta askok sinistu eban Jesusengan.

Jaunak esana.

## Garizumako V. zapatua

### I. IRAKURGAIA

*Herri bakar bihurtuko ditut.*

Ezekielen Profezia liburutik

*Ez* 37, 21-28

Hauxe dino Jaunak: «Erbesteraturik joan ziraneko nazinoen artetik hartuko ditut israeldarrak, alde guztietatik batu eta euren lurraldera ekarriko; herri bakar bihurtuko ditut euren lurraldean, Israelgo mendietan, eta errege bakarra izango dabe guztiek. Ez dira gehiago herri bi izango, ezta erreinu bitan banatuko be.

Ez dira gehiago euren idolatria higuingarriaz eta euren gaiztakeriez kutsatuko. Errudun bihurtu dituan desleialkeria guztietatik askatuko ditut. Garbitu egingo ditut, eta nire herri izango dira eta Ni hareen Jainko.

David nire zerbitzaria izango dabe errege, guztien artzain bakar; nire legeen arabera jokatuko dabe eta nire aginduak arretaz beteko. Jakob nire zerbitzariari emon neutsan lurraldean biziko dira, hareen gurasoak bizi izandako lurraldean; han biziko dira hareek eta hareen ondorengoak betiko, eta David nire zerbitzaria izango dabe buruzagi beti-betiko.

Bakezko ituna egingo dot hareekin; betiko ituna izango da. Lurraldean ezarriko ditut eta ugarituko, eta hareen artean ipiniko dot neure santutegia betiko. Hareekin biziko naz; hareen Jainko izango naz Ni eta hareek nire herri. Neure santutegia hareen artean betiko ipiniko dodanean, orduan jakingo dabe atzerritarrek Neu nazala Jauna, Israel beretzat sagaratu dauana».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Jr* 31, 10. 11-12b. 13 (R/. ik. 10d)

R/. **Zainduko gaitu Jaunak,**
**artzainak artaldea lez.**

V/. Entzun, herriok, Jaunaren hitza,
iragarri urruneko kostaldeetan:
«Israel sakabanatu ebanak berak batzen dau
eta artzainak artaldea lez zaintzen». R/.

V/. Jaunak Jakob herria askatu dau,
indartsuagoaren eskutik libratu.
Poz-oihuka etorriko dira Sion mendira,
Jaunaren ondasunetara helduko dira. R/.

V/. Neskek pozik egingo dabe dantzan
mutil eta agureakaz batera.
Hareen dolua alaitasun bihurtuko dot,
atsekabearen ondoren, kontsolatu eta alaituko ditut. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

*Ez* 18, 31

V/. Kendu zeuengandik
egindako gaiztakeria guztiak, dino Jaunak,
eta egizuez barri zeuen gogo-bihotzak.

## EBANJELIOA

*Sakabanaturik egozan Jainkoaren seme-alabak alkartzeko.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik

*Jn* 11, 45-57

Aldi haretan, Maria ikustera joandako judegu askok, Jesusek Lazarogaz egina ikustean, beragan sinistu eban. Hareetariko batzuk, ostera, fariseuakana joan eta Jesusek egin ebana kontatu eutsien. Orduan, abadeburuek eta fariseuek Batzarra batu eben, eta esan: «Zer egingo dogu? Gizon honek ezaugarri asko egiten

dihardu. Holan jarraitzen izten badeutsagu, dan-danek sinistuko dabe beragan, etorriko dira erromatarrak eta hondatu egingo deuskuez bai tenplua eta bai herria».

Batzarkideetariko batek, urte haretan abade nagusi zan Kaifasek, esan eutsen: «Zuek ez dakizue ezer. Ez ete zarie konturatzen hobe dozuela gizon bat herriagaitik hiltzea, herri osoa galtzea baino?»

Kaifasek ez eban hori berak beratara esan; ezpada ze, urte haretan abade nagusi zanez, profeta bezala hitz egin eban, Jesus herriaren alde hilko zala adierazotean; eta herriaren alde ez ezik, baita sakabanaturik egozan Jainkoaren seme-alabak alkartzeko be. Eta egun haretan, Jesus hiltzea erabagi eben.

Horregaitik, Jesus ez zan agirian ibiltzen judeguen artean. Basamortu ondoko bazter batera alde egin eban, Efraim izeneko herrira, eta han egon zan ikasleekin. Judeguen Pazkoa gainean zan, eta herrialdeko jente askok Jerusalemera igon eban Pazkoa baino lehen, garbikuntzak egiteko.

Jerusalemera etorriak Jesusen bila ebiltzan eta, tenpluan topo egitean, bainotsen alkarri: «Zer deritxazue? Ez ete da jaietara etorriko?» Abadeburuek eta fariseuek aginduta euken, inork Jesus non zan jakiten baeban, salatu egiela, preso hartu ahal izateko.

Jaunak esana.